# Sagardoari:

Bedeincatuba isan dedilla
sagardoaren graciya,
bai eta ere cupira gabe
eraten duben guciya.
Erari onec guison ascori
ematen dio biciya,
au eran gabe egotia da
neretzat penitenciya

Lenengo sartu tabernan eta
ateratzen naiz azquena,
egun gucian surrutian da
etzait betetzen barrena;
au da erari maitagarri bat
arraz pistutzen naubena,
Josepha Carmen biotzecoa,
bete amab-garrena.

Gosea esdet aundiya baño
egarriya bai ugari,
nere barrenac naitazunican
ez diyo berris urari:
Zortzen ditudan coarto picharrac
ematen discat tripari,
nere dembora biciya quentzen
diot senbait sagardori

Gaitzic esduben erari oni
gogos oidiot nic eguin,
satisfacios ez naiz arquitzen
pichar bat eta birequin;
iru edo lau izaten ditut
arratzeraco nerequin,
tristura eta penac sendatzen
ditut sagardoarequin.

Astelena det jaibat artuba
pecatu mortal-ecotzat,
aste artean bearreraco
gogoric eguiten etzat,
aste azquena ai nere pena
oso pereza sartzensat,
modu onetan aste guciya
alperquerian joatentzat

Bart arratzean eguindet amets
len eguin isan dedana,
tabernatican irten naisela
chispatu, edo edana;
pausoric chusten eguin esinda
esaten nuben, au lana;
golpatu gabe ez nindeque juan
gaur ni andria-ren-gana

Cupelan daguan sagardoac dit
ematen tentasioa,
presisamente eranbearra
daucat persecusioa;
milla deabrus josiricaco
orain duben presioa
saleac asco queran medios
dauca estimasioa.

Eranagota berriz naiago,
beti nago egarriyac,
begui bitarte charrican ez dit
eguiten tabernariyac,
emeretzi len au ogueigarren,
amar atzo sor utziyac,
marcac cupelan eguin jaiean
pagatutzeco gusiyac.

(Ramon Artola-c ipiñiac Donostian, 1860 garren urtean.)